# HAU DA PSOE-PSNren NORMALITATEA







- 4 pertsona atxilotuta.
- 5 ospitalizatuak.
- 10 karga polizial baino gehiago.
- Hamarnaka kolpatu.
- Mobilizazio baketsuak: 30 baino gehiago eragotziak.
- 200 pertsonatik gora identifikatuak eta isunak jasotzeko arriskuan.
- Okupazio poliziala, persekuzio politikoa, mota guztietako propagandaren kentzea.

# ESTATUAREN BIOLENTZIA!

**Alde hemendik** **Utzi pakean**

Martxoaren 9an Ezker Abertzaleak greba eta mobilizazio eguna deitu zuen espetxe politika salatzeko eta konponbidearen alde eragiteko. Guardia zibila eta polizia nazionalak bortizki erreprimitu zuten deialdi hau. Espainiako Gobernu Ordezkaria den Vicente Ripak egindako balorazioa ezer ez zela gertatu izan zen. Balorazio hartatik hurrengo adierazpenak azpimarra daitezke:

“Greba egunean normaltasuna izan da nagusi”
“Elkarbizitza apurtu duten basatiei esaten diet bide okerra hartu dutela”

Guardia zibilak eta polizia nazionalak greba eta mobilizazio egunean erabili zuten indarkeria polizialak eraginda, pertsona batzuk ospitalizatuak izan ziren. Hauetako pertsona batek 4 egun eman zituen ospitalean aldaka hautsita zuena, polizia nazional batek 2 metroko altuera baino gehiago duen muro batetik bortizki bota ondoren, berak salatu bezala.

Greba eta mobilizazio egunean jasandako errepresioak datu hauek utzi zizkigun:

- 5 pertsona ospitalizatuta: bat Donibanekoa, aldaka hautsita duena, beste bi Tafallakoak, bat sudurra apurtuta eta bestea kolpatuta, eta azkenik beste bi Lizarrakoak buruan eta gibelean golpe gogorrak jasan zituztenak.
- 4 pertsona atxilotuta.
- 10 karga polizial baino gehiago dozenaka kolpatuekin.
- 30 mobilizazio baketsu baino gehiago eragotziak.
- 200 pertsona baino gehiago identifikatuak eta isunak jasotzeko arriskuan.
- Kaleen okupazio poliziala, toki batzuetan erabatekoa, 2 pertsona baino gehiago elkarrekin biltzea debekatuz.
- Propaganda politiko desberdina kendu, puskatu eta lapurtu.

Hau ez al da biolentzia ? Zeintzuk dira elkarbizitza apurtu zuten basatiak? Hau al da Ripak aipatzen zuen normaltasuna? Herri askotan Frankoren garaiko irudiak birgogoratuak izan ziren, benetako eszepzio egoerak bizi izan zirelarik. Egoera hauek ez zituzten eragin dispertsio politika kriminala salatu nahi izan zutenek.

Komunikabideek ez zituzten datu hauek bildu, Espainako Gobernu Ordezkariaren bertsioa ontzat eman zuten kontrastatu gabe. Ez ziren gai izan Nafarroako ezberdinetako herritarrei galdetzeko zein izan zen beraien kaleetan bizi izandako egoera. Ez ziren gai izan polizia nazionala eta guardia zibilak erabilitako indarkeria salatzeko, jendarteari erakutsiz zeintzu izan ziren elkarbizitza apurtu zuten basatiak. Ez ziren gai izan milaka nafarrek jasandako eskubide zibil eta politikoen urraketa salatzeko.

PNV, EA, Batzarre, Aralar, IU eta Nafarroa Bai-k ez zuten salatu indarkeria polizial hau, estatu biolentzia hau. Zergatik ez zuten salatu milaka nafarrek jasandako greba, manifestazio, antolatze, adierazpen askatasun, zirkulazio etabarren eskubideen murrizketa. Horrelako aktuazio errepresiboak ez al dira gatazka kalean jarraitzen duenaren adierazle? Zergatik ez zizkieten Gobernu Espainiarraren Ordezkariari erantzukizunak eskatu eta Euskal Herriaren eta euskal herritarren eskubide zibil eta politikoen alde egin? Espetxe politika salatu nahi izan zutenek ez zuten aukerarik izan beren adierazpen askatasun eskubidea praktikara eramateko.

Askatasuna-tik Ripa jaunaren dimisioa eskatu genuen, zeren arduraz jokatu ordez eta nafarren borondatea eta eskubide zibil eta politikoak errespetatu ordez, biolentzia eta errepresio basatia aukeratu zituen elkarbizitza apurtuz. Horrelako arduradun politiko batek ezin du duen kargua izan zeren Nafarroako jendarteak eta era berean Euskal Herrikoak bakea eta normalizazioaren alde egiten duten bitartean pertsona honek gerra eta errepresioaren aldeko apustua egiten baitu. Horrelako arduradun politikoek gatazkaren konponbidera eta bakera eramango gaituen eszenatokia lortzea zaildu eta oztopatzen dute.

Gobernu Espainiarrak eta Nafarrak, polizia nazionala eta guardia zibilaren bidez, ezkertiar eta abertzale diren euskaldunen aurka erabiltzen duen errepresioa ez da aldatu. Hauek bai direla jardunaldi basatiak. Hau al da PSOE-PSNren ekarpena gatazkaren konponbideari? Dirudienez normala da, Espainako Gobernu Ordezkariaren eritziz, estatuak bortizkeria erabiltzea jendartea gatazkaren konponbidearen alde eta espetxe politikaren aurka kalera ateratzen denean.

Pertsona hau bere kargu politikoan jarraitzen duen bitartean zaila izango da bake, normalizazio eta euskaldunen borondatea errespetatuko duen eszenatokia lortzea, argi geratzen baita, horrelako aktuazioekin, ez dituztela errespetatzen Nafarroako herritarren borondatea ezta eskubide zibil eta politikoak.

# SAKANA

## Goizean

**ETXARRI:**
Goizeko 10:00tan kontzentrazioa deituta zegoen. 15/20 guardia zibil agertu ziren eta jendea sakabanatu zuten. 3 pertsona baino gehiagoko taldeak egoten ez zuten utzi, ordutik ez baitziren joan. Pankartak eta kartelak kendu zituzten. Gazte batzuk ere ihesean ibili ziren baina ez zituzten harrapatu. Jendea identifikatzen ibili ziren egun osoan. Eta talde txikiak formatzen zirenean banatu egiten zituzten.

**BAKAIKU:**
Pankartak eta kartelak kendu zituzten.

**ALTSASU:**
Eskualdeko manifestazioa 12:30tan deitua zen eta 11ak aldera plaza okupatu zuten. Ordua iristen zen heinean gehiago eta gehiago agertu ziren eta azkenean herria erabat okupatua zegoela esan dezakegu. Herri guztian zehar jendea identifikatzen aritu ziren. Kartelak eta pankartak kendu eta puskatu zituzten.

**OLAZTI:**
Udalak 2 orduko paroa egin zuen eta kalean kontzentrazioa deitu zuten. Guardia zibilak agertu eta LAB-eko 2 afiliatu identifikatu ondoren, kontzentrazioa sakabanatu zuten.

**UHARTE ARAKIL**
Eskualdeko mobilizazioa bertan egin zen. 320 pertsona inguru hartu zuten parte. Komunikatua irakurtzen ari zirela guardia zibila agertu zen eta 3 gazte identifikatu zituzten.

## Arratsaldean

**ETXARRI:**
19:30tan kontzentrazioa edo manifestazioa egitea pentsatua zegoen. 19tan , egun osoan egon ziren bi ibilgailuei beste 4 gehitu zitzaizkien. Antidisturbioz jantzi eta plaza guztia hartu zuten. Taldeak sortu ahala sakabanatu zituzten.

**ARBIZU:**
200 pertsonako manifestazioa egin zen 19:30tan. Etxarriko jendea bertara agertu zen eta mobilizazio txukuna egin zen.

**BAKAIKU:**
30 pertsonako kontzentrazioa burutu zuten 19:30tan arazorik gabe.
Arratsalde osoan zehar goardia zibila herritik egon zen pasatzen, probokatzen. Propaganda kendu zuten.

Esan beharra dago guardia zibilak sakana guztian sakabanatuta zeudela, herri garrantzitsuenetan 3 patrol edo eta furgonak fijo, egun osoz, zeudelarik. Bitartean de rule ibili ziren etengabe..

**UHARTE:**
30 pertsonako kontzentrazioa burutu zuten 20:00tan arazorik gabe.
Arratsean herritik pasatzen egon ziren goardia zibilak.

**IRURTZUN:**
20 pertsona kontzentratuak zeuden eta 10 minuto zeramatenean guardia zibilak agertu eta banatu zituzten. Eguneko azken orduetan herrian zehar zebiltzan bueltaka eroen moduan.

**ALTSASU:**
30 pertsona kontzentratu ziren Zumalakarregi enparantzan 19:30tan. Plaza nagusia hartuta zegoen eta beste plaza horretan egin zuten.

**OLAZTI:**
40 pertsona kontzentratu ziren 19:30tan eta bertan zeudela bi ibilgailu etorri eta kargatu egin zuten gomazko pilotakadaz jendea banatuz. Geratu ziren herrian bueltak emanez patrolekin.

**ITURMENDI:**
15 pertsona kontzentratu ziren 19:30tan.

**LAKUNTZA:**
55 pertsonako kontzentrazioa burutu zuten 20:00tan arazorik gabe.

- Altsasu eta Etxarriko plazatik ez ziren mugitu eta ezin izan ziren egin mobilizazioak bertan.
- Egun osoan presentzia itogarria izan zen Bakaikun, Irurtzunen…
- 10 identifikazio egon ziren eta isunak jarriko zizkietela esan zieten.

## IRUÑEA

-Iruñeko sarreretan nabaria izan zen poliziaren presentzia, errotonda inportanteetan eta industrial guneetan ere. Auzoetan ere, poliziaren presentzia oso nabaria izan zen.

**Iruñean** kontzentrazioa egiteko momentuan, eguerdiko 12etan, txakur pilo egon ziren, azkenean saiatu zen manifestazioan estafeta kaletik joatea, baina txakurrek ekiditu zuten eta karga bat egon zen. Jendea zabaldu zen eta polizia nazioanlak hainbat pertsona identifikatu zituen. Ordu 2ak arte kaleetatik ibili ziren bokatxa eta porrekin. Paisanoz jantsitakoak pila bat ibili ziren. Itogarria izan zen bizi izan zen egoera.

**-ERROTXAPEA:**
Aurreko egunean, Martxoaren 8an, 30bat pertsoneko konzentrazioan Polizia Nazionala agertu zen. Pankarta eta presoen argazkiak kendu zizkieten eta pankarta eramaten zituen pertsonek identifikatuak izan ziren.
Martxoaren 9an, goizeko 11etan, 50bat pertsonak konzentrazio batean parte hartu zuten.

**-Ospitalean**, konzentrazio bat egin zen eguerdian.

**-.TXANTREA:** Goizean goizetik polizi espainiarraren jarrera oldarkorra izan zen, lehenengo ordutik presentzia itogarria izan zelarik , bai uniformeduna eta baita sekretena ere, dena den ez zen arazo handiegirik egon. Arratsaldeko 20etan, 250bat pertsona mobilizazio batean parte hartu zuten. Polizia Nazionaleko bi furgona agertu ziren eta kargatu egin zuten gomazko pilota eta porrekin mobilizazioa deseginez. Ondoren pertsona batzu identifikatu zituzten.

**-.ALDE ZAHARRA:** Goizean pikete informatibo batzuk identifikatu eta oztopatu zituzten Polizi Nazionalak. Osotara 20 pertsona. Zituzten eskuorri guztiak lapurtu zizkieten.

**-.DONIBANE:**
Goizeko 11etan, 60 pertsonek parte hartu zuten konzentrazio batean Azuelo Plazan. Bukaeran, polizia nazionala azaldu zen, pankarta eta eskuetan zeukaten kartel batzuk kendu zizkieten eta 6 pertsona identifikatu zituzten. Konzentrazioa desegin zuten.
Arratseko 20etan, 40bat pertsonak konzentrazio batean parte hartzen ari zirenean 2 furgoneta agertu ziren eta zuzenean kargatu egin zuten porrekin. Gutxienez, 3 pertsona kolpatuak izan ziren. Kargatik ihesean zegoen pertsona bat hartu zuten eta 2 metro eta erdiko altuera batetik poliziek bota egin zuten modu txarrez. Lagun hori ospitalera eraman behar izan zuten gerria hautsita zuelako. Presoen argazkiak lapurtu zituzten.
**-.ARROSADIA:**
15 pertsona bildu ziren goizeko kontzentra batean. Nazionalak agertu ziren eta disolbitu egin zuten. Arratsaldeko 19etan, berriz kontzentra bat burutu zuten. Honetan 50 lagun bildu ziren eta polizia nazionalak agertu ziren kontzentrazioa disolbituz. 2 gazte identifikatu zituzten.
**-.ITURRAMA:**
Goizean, Polizia Nazionalak kartgatu egin zuen 40 bat pertsonen kontra pikete informatibo batean parte hartzen zutenean.
Iturrama ikastetxean 100 ikasle kontzentra bat egin zuten eta txakurrek kargatu zuten. Gazte batzuk jipoitu zituzten. 13etan berriz, beste konzentra bat burutu zuten eta berriz kargatu zuten.
Arratsaldean, 25 bat pertsonak konzentrazio bat egin zuten. Polizia agertu zen eta bortizki kargatu egin zuen.

## IRUÑERRIA

**-.BARAÑAIN:**
Goizeko 11etan, ikastetxean, ikasleek kontzentrazio bat egiten ari ziren bitartean, Guardia Zibila agertu zen eta desegin zuen kontzentrazio hori.
Arratseko 18’30etan, konzentrazio bat eskatua zuten eta Guardia Zibilak ez zuen egiten utzi esanez ez zutela komunikatu, ordu erdi bat beranduago esan zuten komunikatua zegoela baina debekatzen zutela. Jendea hasi zen futbolean jolasten Guardia Zibilaren aurrean eta hauek ez zieten utzi elkarrekin egoten. Herri honek okupazio polizial izagarria jasan zuen: 9 patrol, autobus bat eta kotxe bat gutxienez. Guzti hauek udal plaza okupatuta izan zuten egun osoan eta bertatik pasatzen ziren gazteak identifikatu zituzten. Egun osoan zehar taberna eta komertzioetan sartu ziren guardia zibilak jarrera probokatzailearekin kontsumitzeko asmoarekin. Taberna batean 9 guardia zibil egotera iritsi ziren, bertoko bezeroak izutu zituztelarik.
**-.ANTSOAIN:**
Goizean, guardia zibilak lau pertsona identifikatu zituen eta desorden publikoengatik prozedura irekiko zietela eta komertzianteei nolabaiteko koakziorik egon zen galdetuko zietela esan zieten. Baita hurrengo egunetan jasoko zituztela zitazioak epaitegian deklaratzeko. 4 patrol eta 4 kotxe ibili ziren.
Arratsaldeko 20etan mobilizazio bat egin behar zuten plaza batean. Ordu horretarako goardia zibila hor zegoen eta ez zuten aukerarik izan ezer egiteko. Kontzentrazioa egiten saiatu ziren baina guardia zibilak disolbitu zituen hainbat pertsona kolpatuz. Balkoi batzuetatik jendea atera zen kazerolekin zarata eginez protesta moduan. Goardia Zibil gehiago agertu ziren, patrolekin plazara peatonalera sartu ziren eta bokatxekin mehatsatu zituzten balkoietan zeuden pertsonak eta plazan zeudenak ere.

**-BERRIOZAR:**
10'30etarako konzentrazioa deituta zuten eta pikoloak agertu dira esanez debekatua zegoela. Hala ere, jendea jarraitu da biltzen. Orduan, goardia zibil gehiago agertu dira bokatxa eta porrekin jendea disolbitzeko. Jendea joan da eta 70bat pertsona asanblada bat egin dute.

Arratsaldean, Udaletxeko plenoan sartu dira bizilagun batzuk kartelekin. Alkateak sesioa suspenditu du, eta udaltzainei eskatu die jendea kanporatzea. Manifestariak atera dira Udalatik. Geroxeago, 19:30etan, kontzentrazio bat burutu behar zuten lekuan GZ agertu da eta ez die utzi. Beste leku batera joan dira eta errepidearen bi aldeetan jarri dira kartelekin. Azkenean, errepide mozketa egin dute. GZ hasierako lekuan gelditu da, eta ez da honetaz ohartu.

**-.NOAIN:**
Goizean zehar, pikete informatiboak ibili dira herritik. Arratsaldean, 18 pertsonak konzentrazio batean parte hartu dute. Goardia Zibila jendea mehatxatuz agertu denarren, konzentrazioa manifa bat bihurtu dute parte hartzaileek.

**-.ZIZUR NAGUSIA:**
50bat pertsona bi konzentrazioak ari ziren egiten. Xiruloekin patrol bat agertu da, jeitsi dira porra eta kaskoekin eta pankarta, lehenengo taldeari kendu diote eta desegin dute konzentrazio hau. Bigarren taldearengana joan dira jarraian, 20 pertsona baino gutxiago zeudenez konzentrazio horretan jendeak ez du izan nahi bere burua sakabanatu, tentsio uneak bizi dira. Ordun, paisanoz jantzitako poliziaz beteta zegoen kotxe bat agertu da eta “porra estensiblekin” jeitsi dira. Pankarta kendu diete eta desegin dute bigarren konzentrazio hori ere.
**-.ATARRABIA:**
50 bat pertsona erretenitu zituen Polizia Nazionalak goizean. Mobilizazioei buruzko eskuorriak lapurtu zizkieten ilegalak zirela esanez. 2 pertsona kolpatu zituzten.

**-.BURLATA:**
Polizia Nazionalak kargatu egin zuen konzentrazio batean parte hartu zuten 50 bat pertsonen kontra.

## BORTZIRIAK:

**-.LESAKA**
Guardia zibilak erabat hartuta zuen. 8 patrol, autobus bat eta 4 patrol guardia zibil bereziekin zeuden. Jendea ezin zen binaka egon. Egin behar zen mobilizazioa ezin izan zuten egin. Egoera hau zela eta Lesakako udala okupatu zuten. Lesakako Udalean jendea sartu da zeren eta kaleetatik ezin zen egon, dena okupatua zutelako eta jendea ezin zelako bildu 2 pertsona baino gehiago, jipoitzeko arriskupean baitzeuden. Udalean bildu zen jendeak batzarra egin zuen ordu erdi batez. Udaletik ateratakoan, goardia zibilak jendeari eramaten zituen ikurrinak kendu egin zizkieten. Bertan zeuden komunikabideei identifikazioak eskatu eta irudiak kendu zizkieten. Egoera hau bizi da egun osoan.
Kazerolada bat egin zuten arratsaldean. Goardia Zibila herria hartuta zuen, eta ezin izan zuten kontzentrazio bat burutu. Berriz kendu zizkieten pankarta eta ikurriñak.

**-.BERA:**
Lesakako egoera berdinean, jendeak ezin zuen beste bi pertsonekin bildu. Konzentrazioak egitea ez zuten uzti goardia zibilek. Hemen ere udala okupatu zuten ezin baitzen kaletik ibili.

## BAZTAN

**-.ELIZONDO:**
Eguerdian, 20 pertsonako 7 konzentrazio egin ziren, goardia zibilak kargatzeko mehatxua egin ondoren. Goardia Zibilak pertsona batzuk identifikatu zituen. Presentzi poliziala handia pairatu behar izan zuten hangoek ere. Xaloa telebistari (herri telebista) ez zioten irudiak hartzen utzi.
Arrtsaldeko 19etan ez zuten utzi kontzentrazioa egiten. Ikurrinak eta presoen aldeko ikurrak ere zabaltzea debekatu zieten. Kargatzeko mehatxuarekin jendea disolbitu zuten. 2 pertsona identifikatu zituzten.

**-.IRURITA:**
Eguerdian, 40 pertsona parte hartu zuten kontzentrazio batean. Guardi Zibila agertu zen, 4 pertsona identifikatu eta kontzentrazioa desegin zuten.

## LEITZALDEA

**-.ARESO:**
Herriaren sarreran eta errepideetan presentzi poliziala pairatu zuten.
Aratsaldeko 20etan, 25bat pertsona konzentrazio batean parte hartu zuten.

**-.LEITZA:**
Erabat okupatua izan zuen herria goardia zibilak. Udaletxera jendea sartu zen batzar informatibo bat egiteko asmoz.
Arratsaldean, 400 bat pertsona mobilizatu ziren.

**-.GOIZUETA:**
Arratsaldean, 50 bat pertsonak konzentrazioa egin zuten.

## ULTZAMALDEA

Arratsaldean, 30 bat pertsonak konzentrazio batean parte hartu zuten Larrainzarren.

## EKIALDEA

**-.AGOITZ**
Eguerdiko 12’30etan konzentrazioa bazuten. Goardia Zibilak ez zien utzi 20 pertsona baino gehiagoko konzentrazioa egiten. 18 pertsona bildu ziren eta gainerako jendea inguruetan egon zen. Merkatu ondoan izan zen hau. Egoera hau ikustean, Merkatua itxi zuten dendalariek.
19’30etarako konzentrazioa bazuten. Ordu horretan, 10 patrol bazeuden plazan. Hor zegoen jende guztia identifikatu zuten. Jendea geratu zen plazan konzentrazioa burutzen nahiz eta pankarta ez izan. Alkatearengana joan ziren eta “ezin zuela ezer egin” esan zien.
**-.ILUNBERRI:**
Arratsaldean, 40 bat pertsonek mobilizazio batean parte hartu zuten.

**-.AURITZBERRI:**
18 pertsonak parte hartu zuten konzentrazio batean. Goardia Zibilak guztiak identifikatu zituen.